# ULERMENA TEST BIDEZ 6

**1. Zeuk ere izango dituzu, ziurki, nik esandakoa berresteko adibide franko, ezbairik gabe.**

a) Nik ez bezala, zuk izango dituzu nire esana berresteko adibide franko.

b) Ez dut zalantzarik zuk, nik bezala, izango dituzula makina bat adibide diodana berresteko.

c) Zeuk ere badituzu, ziurki, nik esandakoa berreskuratzeko adibide franko.

d) Agian, zuk ere izan zenitzake zenbait adibide nik esaten dudana baiesteko.

**2. Tresna miragarri hura, hizkuntza alegia, esanera zeukan beti Luis Martin Santosek, Mitxelenaren ustez.** Hau da:

a) Hizkuntzak esaten zizkiola gauzak Luis Martin Santosi.

b) Buruak agintzen ziona esan ezinik ibiltzen zela Luis Martin Santos.

c) Tresna miragarri hark, hizkuntzak, ederki obeditzen ziola Luis Martin Santosi.

d) Tresna miragarri hark, hizkuntzak, ederki menderatzen zuela Luis Martin Santos.

**3. Iraganaldiari buruz haztamuka gabiltza guztiok, eta itsu-itsuan, urrutixegi jo nahi baldin badugu.** Hots:

a) Iraganeko kontuetan gehiegi sakondu nahi dugunean ez dugu ezer argirik atzematen.

b) Denok ere nahiko dorpe ibili izan gara iraganean, itsuak bezala.

c) Iraganaldia aztertzeko urrunegi joaten gara, batere orekarik gabe.

d) Txikiak izan garenean dena ukitzeko eta aztertzeko joera izan dugu guztiok.

**4. Heriotzak mundu honetan ez du inor gupida; deus gutxi balio dute haren aurrean imintzio eta espantuek.** Zer esan nahi du?

a) Heriotzak mundu honetan ez duela inor maite; deus gutxi balio dutela haren aurrean imintzio eta espantuek.

b) Heriotzaren aurrean deus gutxi balio dutela hileta elizkizunek; hark mundu honetan ez duela inor erruki.

c) Heriotzak mundu honetan ez duela inor erruki; ezer gutxi balio dutela haren aurrean imintzio eta harridurek.

d) Heriotzaren aurrean deus gutxi balio dutela hileta elizkizunek; hark mundu honetan ez duela inor errespetatzen.

**5. Errefrau elizkoi anitz, gehiegikeria ugariren bilduma izanagatik, ezin da ukatu ingurunearen behaketan oinarritzen direla.** Hau da:

a) Esaera zaharretan biltzen diren iritziek inguruko gehiegikeriei erreparatzen diete.

b) Ingurunearen behaketak elizaren gehiegikeria anitz eragin zituen.

c) Gehiegikeriak gehiegikeria, errefrau elizkoi asko inguruaren ezagutzaren ondorio dira.

d) Bilduma anitzek elizaren errefrauak eta inguruaren behaketa uztartzen dituzte.

**6. Oraingo mintzaldiek ez dute, mamiaren aldetik, ordukoen eite handirik.** Bestela esanda:

a) Mintzaldiak orain, mamiaren aldetik, beste garai batekoak bezalakoak dira.

b) Lehenagoko saioak beste itxura batekoak izaten ziren, edukiari dagokionez.

c) Oraingo mintzaldiek ez dute ospe onik, mamiagatik batez ere.

d) Orduko mintzaldiek eta oraingoek ere ez dute mami handirik.

**7. Gizakiok nekazari egin ginenean naturak zer emango zain gelditu ginen, eguraldiaren menpeko eta urte-sasoien gatibu.** Bestela esanda:

a) Gizakiok nekazari egitean eguraldiak menpean hartu gintuen; ez, ordea, urtesasoiek.

b) Urte-sasoien gatibu bihurtu ginen eta naturak zer emango zain gelditu nekazari izateari uztean.

c) Gizakiok nekazari egitean eguraldiaren eta urte-sasoien morroi bihurtu ginen.

d) Naturak zer emango zain gelditu ginen eta eguraldia menpean hartu genuen.

**8. Moneta batasunaren ezarpenak ez dakar estatunazioaren gainbehera halabeharrez, nahiz epe laburrean honen habeak aldatuko bide diren.** Edo, berdintsu dena:

a) Estatu-nazioaren egituraketa epe laburrean aldatuko dela argi dagoen arren, ez dirudi moneta batasunak estatuak indartuko dituenik.

b) Epe laburrean jasan litzakeen egitura-aldaketak gorabehera, moneta batasunak ez du zertan estatu-nazioaren hondamendia eragin.

c) Tamalez moneta bakarra ezartzeak estatunazioaren porrota ekar lezakeen arren, ez dirudi estatuok funtsean aldaketarik jasango dutenik.

d) Moneta batasunak estatu-nazioaren nagusitasuna kolokan jarriko du, estatuok derrigorrean egin beharko dituzten aldaketak direla bide.

**9. Brastakoan hedatutako laino itxiari ohi zaion izuzirrarak hotzikaratu ninduen.** Hau da:

a) Itsasontziaren aurrealdean izaten den lainoak eragiten duen hozkirriaren antzekoa sentitu nuen.

b) Ekaitza dakarrenean zabaldu ohi den laino itxi eta hotzak ikaratu ninduen.

c) Bat-batean zabaltzen den laino itxiak eragiten duen moduko beldurrak asaldatu ninduen.

d) Sarritan hedatu ohi den laino itxi beldurgarriak hotzikara eragin zidan.

**10. Sasoi honetako sintomarik ageriena aisia pairatzeko ezintasuna da.** Hau da:

a) Halako ezintasun larria sortzen digu gaur egun aisia edo denbora librearen joanak.

b) Sasoian dagoenari erraz antzemango zaio bere aisi denborarekin zer egin ez dakiela.

c) Denbora libreak eragiten duen larritasuna da gure garaiko ezaugarri nagusia.

d) Garai honetan zerbaitetarako astia ateratzea da gure ezintasunik nabariena.

**11. Txirritak bi alkandora nola, Basarrik ere bi aitzakia zeramatzan soinean jendearen ulertezintasuna gizentzeko.** Hau da:

a) Txirritak bi alkandora bezalaxe, gizartearen uste okerra eragiten zuten bi ezaugarri zeuzkan Basarrik.

b) Jendeak edozein aitzakiarekin jipoitzen zuen Basarri; Txirrita, aldiz, oparoago zebilen eta bi alkandoraren jabe zen.

c) Jendeari barregarria zitzaion Txirrita bere bi alkondarak zirela eta. Basarri, berriz, arrotza zitzaion bere bi ezaugarriak zirela eta.

d) Txirrita eta Basarri bi aitzakiagatik ezagutzen ditu jendeak: bata, bere alkandorengatik; bestea bere ulertzeko ezintasunagatik.

**12. Errentagarritasunaren irizpidea lege duenak ez du onargarri inork liburu bat kultur akuilu soilez idaztea.** Hau da.

a) Errentagarritasunaren atzetik dabilenak nekez estimatuko ditu kultura akuilatzeko eta sortzeko dauden legeak.

b) Liburuaren kultur balioak baztertuko ditu etekin ekonomikoa besterik ikusten ez duenak.

c) Diruaren atzetik dabiltzanen irizpideak ez dira kultur sortzaileen eta idazleen onerako.

d) Kultur irizpide hutsak ez ezik errentagarritasunak ere izan behar du idazlearen akuilua.

ERANTZUNAK:

1B2C3A4C5C6B7C8B9C10C11A12B